# SAN MILLAN



**Sarrera abestia**

**BIHOTZ BATEZ ALKARTURIK**

Zugana gatoz, Jauna; Zugana gatoz, Jauna.
Emoiguzu zure argi grazi ta maitasuna:
entzun, arren, Jauna.

Altarean aurkitzen da kristau alaitasuna (2).
Emoiguzu zure argi, grazi ta maitasuna:
entzun, arren, Jauna.

**ERANTZUN SALMOA**

Sal 34 [33], 2-3. 4-5. 6-7. 8-9. 10-11

**R/. Bedeinkatuko dot aldi oro Jauna.**

Bedeinkatuko dot aldi oro Jauna,
nire ahoan beti haren gorespena.
Harro nago Jaunagaz,
entzun begie apalek eta poztu beitez. R/.

Handietsi nigaz batera Jauna,
goratu dagigun alkarregaz haren izena.
Jaunagana jo neban, eta harek erantzun,
bildur guztietatik ninduan libratu. R/.

Begiratzen deutsoenak distiratsu egongo dira,
ez jake aurpegia lotsaz gorrituko.
Dohakabeak dei egin eban, eta Jaunak entzun,
eta estualdi guztietatik eban salbatu. R/.

**R/. Aleluia! (**Mt 11, 28)

**V/.** Zatoze Neugana nekatu eta lanpetu guztiok,
eta Neuk arinduko zaituet, dino Jaunak. **(R/.)**

**JAUNARTZEAN**

**Zabal bihotzok errukirako,**
**sendo bihotzok borrokarako.**

—Gizon-emakume barri, kondairaren eragile
gizatasun barriaren oinarri eta egile.
Gizon-emakume barri arriskuen onartzaile,
fede-bizitzan ausarta, zailtasunetan garaile.

—Gizon-emakume barri, esperantzaren gudari,
zuzenaren gose-egarri, egi bidean bidari.
Gizon-emakume barri, ez kate ta ez lokarri,
askatasunaren jabe eta askatasun-azkarri.

—Gizon-emakume barri, mugaz-gaindiko maitale,
alkar artean oretuz arraza eta lurralde.
Gizon-emakume barri, pobreen artean pobre,
hauekin alkarbanatuz etxeko ogi ta aterpe.

## **POBREEN EGUNA** /23

Pobrezi klase asko
dago inguruan
errez dog*u i*kusiko
bistaz aritzean.
(Erronka behin betiko
kristau alkartean
Jesusen irudiko
gu izatekotan).bis.

Pobreen arpegiak
kopeta tristea
egoera larriak
sortzen nahigabea.
(Gure afan guztiak
lanean jartzera

Ezin emon lepoa
*ahul* behartsuari
horrek ere Jainkoa
dauka defentsari.
(Justiz*i e*ten bakoa
beti izan bedi
non gogo han zangoa
entzunez pobr*ea*ri). bis.

Pobrearen begiak
begitu ditugu
askoren gabeziak
gu salatzen gaitu.
(Apurturik hesiak
alkar besarkatu

deitzen dausku premiak
aurten be atzera). bis.

bardintasun ametsak
guk egi bihurtu). bis.